## 2. EKITALDIA: AURREKO GURPILA
## «Jesus da ardatza»

*(Maitatu Jainkoa eta maitatu hurko laguna)*

Barnekotasuna landu



**Sarrera-oharra**

Ondo etorri, senideok, Abendualdiko 2. domeka honetan ospatuko dogun Familia-Mezara.

Alde batetik, profeten berbak entzungo doguz. Beste alde batetik, gure umeei lagun egingo deutsegu Jesus ezagutzen eta ha maitatzen, Salbatzaile lez dei egin ahal izan deioen.

Gaurkoan —txirrinduaren irudiaz jarraituz— **aurreko gurpila** azpimarratuko dabe: harexek emoten deutso txirrindulariari norantzakoa.

Eta, nork emoten deusku guri?, nor da gure txirrinduaren aurreko gurpila? Jesus!

Goazen pozik beragana, profeten berbeak argitu eta bultzatuta.

**Sarrera-abestia**

POZ-POZIK NATORKIZU, JESUS,
BENETAN NAHI BAIT ZAITUT ONDO EZAGUTU
TA ZURI GOGOTSU JARRAITU
ZEU ZARALAKO NIRE EREDU TA MAISU.

**Abadearen agurra**

† Aitaren…

—Amen.

† Gu salbatzera datorren Jauna izan bedi zuekin.

—Eta zure espirituarekin

**Abenduko kandelearen ixiotzea**

† Gure artean badan Salbatzaileari bidera urteteko, gure ateak zabaltzeko darabilgun bidea markatu egiten dogu, urratsez-urrats. gaur bigarren urratsa emoten dogula iragarriko dogu, bigarren kandelatxoa ixiotuz, abesti artean:

**Jagi zaitez, Jerusalem, badator zure argia;**
**hor dozu argitzen, su ta gar, Jaunaren aintza.**
*Eten lokarriak, barri txarrak alboratu;*
*pobre guztiei zure bihotza zabaldu.*

**OTOITZA**

Maitasuna da gure taldearen lema.
Zu maitatzea, Jesus,
eta laguna maitatzea.
Emon ugari zure indarra
maitasunaren gurpila
sekula gelditu ez dadin.

**Lehenengo Irakurgaiari** (Ba 5, 1-9)

Triste zagoz, itun, lur-jota, gogo barik…? Halantxe egoan, erbestean, Jainkoaren herria. Baina badau herriaren ardurea Jainkoak, eta profetea bialduko deutso adore emotera eta harentzat Jainkoak barri onak, alaiak, jai-girokoak daukazala iragartera.

**Salmoari sarrerea (**Sal 125, 1-2ab…**)**

Gure egoera tristea aldatzeko Jainkoak dauan gogoari eta asmoari geure gogoa eta ahalegina gehitu behar jakoz. Eta zelan igarten dan gauzak aldatzen diranean. Salmoagaz batera esango dogu hori, Jainkoari gure esker ona agertuz.

**R/. Gugaz handikiro jokatu dau Jaunak;**
**hau da poza daukaguna.**

**Ebanjelioari sarrerea** (Lk 3, 1-6)

Bai; Jainkoaren gizona, profetea, da Bateatzailea. Baina oraindino badauka txukundu beharrik. Dana-dala, berak dakian lez dinosku bere zer dan eta zertara dei egiten deuskun. Entzungo deutsogu? Prestatu gaitezan Aleluia abestuz, zutunik.

**Homilian**…

—Norabideko gurpila da aurrekoa; eta guretzat Jesus dala dinogu. Baina…

… Ba dakigu norantza joan gura dogun, eta Jesusek garoazala norabide horretan zehar?

… Nortzuk doguz gaur egun hur-hurreko "profetak"? Nork garoaz Jesusengana, haren irakatsiak-eta ikastera?

… Gure norabidea eta ibilbidea urratsez-urrats markatzen ez bagoaz, laster galduko dogu norabidea, eta deslai ibiliko gara. Ez jaku hori sarritan jazo? Zer egin, orduan?

… Jesusek alkarmaitasunera garoaz. Horretarako barru bizitza zaintzea dagokigu. Ba daukaguz laguntzaileak…

…/..

**Abenduko bertsoak**

Fededun batek itaundu eustan:
Eleizea nora doa?
Hiru berbatan azaldu daigun,
ez bada be komodoa:
Alkartasuna oinarri dogu,
parte hartze metodoa,
Misinoagaz osatzen dabe
hirurak ba sinodoa.

Beti betiko, Jesusek dino,
gauza bi bakarrik dira,
Markosek holan idatzi eban
barri onaren argira:
Gure munduan negarretan dan
behartsuari begira,
Maitez gu zaintzen Jesus datorku
alkarte erdi-erdira!

**Ezaugarrien aurkezpena**

Aurreko gurpila: honen esangurea eta gure konpromisoa

—…

**Oparien gainekoa**

Jainko Aita ona,
ogi ardauekaz batera
aurreko gurpil hau
aurkezten deutsugu.
Beti jira-biran ibili daitela,
beti maitatzen bizi gaitezen.

**Sinidoaren inguruko otoitza**

Hemen gaukazuz, Espiritu Santua,
zeure izenean batuta.
Gure benetako aholkulari zarana:
zatoz guregana, gure alde egin,
sartu gure bihotzetan.
Erakutsi eiguzu bidea,
erakutsi helmugara zelan iritsi.
Ez gaitezala okerreko bidetik joan,
makal eta pekatariei gertatzen jaken lez.
Ezjakintasunak ez gaizala
guzurrezko bideetatik eroan.
Emoiguzu bereizketaren doea,
Gure ekintzen oinarrian ez daiten
aurre-iritxi eta burutapen faltsurik izan.
Eroan gaizuz batasunera zuregan,
egia eta zuzentasunaren bidetik aldendu ez gaitezan,
lur honetako erromesaldian
betiko bizia jadesten ahalegindu baino.
Zeuri eskatzen deutsugu, Aita eta Semeagaz bat,
sasoi eta leku orotan jarduten dozun horri,
gizaldi eta gizaldietan. Amen.

…

**Jaunartze ondorengoa**

Jainko Aita-Ama ona:
zuretzat nire berbak eta eskerrak,
zuretzat nire otoitza eta garaipenak.
Eta huts egiten badot be,
Zuk segidu nire ondoan.